# LABURPENA

"Galdutako objektuak" film dokumental baten proiektua da. Bertan, Mikel Zabalzaren desagerpena eta heriotza aztertuko dira, eta, horrekin batera, demokraziaren garaian Espainiako polizia-etxeetan izandako tortura kasuak.

Horretarako Mikel Zabalzaren familiaren parte-hartzea izanen dugu. Dokumentalean, gainera, gertakari haien zuzeneko lekuko batzuek hartuko dute parte, eta Zabalzarekin batera atxilotu zituzten pertsonek ere bai.

Bestalde, zenbait adituk gako batzuk aurkeztuko dizkigute ulertzeko zer gertatu den torturak mendebaldeko demokrazietan bizirik irauteko XX. mendean zehar, eta are ugaltzeko ere.

# SINOPSIA

Orbaizetako etxe batean, arma-ola zahar baten ondoan, sekretu bat dago kutxa batean sartua. Kutxa hori gorderik dago, isiltasun legeak zaindua.
Mikel Zabalza autobus gidaria hilik agertu zen Guardia Zibilak atxilotu eta Intxaurrondon torturatu ondoren. Haren familiak gertatutakoaren egia osoa azaleratu dadin nahi du. Beste 3.000 tortura-salaketa daude oraindik argitu gabe. Zer gertatu da Espainiako polizia-etxeetan demokraziako urteetan? Zer gertatu da atxilotuen torturak frankismoaren ondotik ere sistematikoki irauteko? Nola eraman dute zama hori torturaren biktimek eta haien ahaideek? Gaur egun, zer da tortura? Zer egin dezakegu tortura desagerrarazteko?

# FILMAREN ABIAPUNTUA

30 urte igaro badira ere, Zabalza kasuaren bertsio ofiziala ez da aldatu. Mikel Zabalza ihes egiten saiatu zen hiru guardia zibili ETAren zulo bat non zegoen erakustera zihoala. Uretan ito zen, eta haren gorpua 20 egunen buruan agertu zen Bidasoan. Dena dela, euskal gizartea sinetsita dago torturen ondorioz hil zela Intxaurrondon. Hala ere, gertakari horiek ez dira inoiz epaitu, eta familiari ez zaio inolako errekonozimendu ofizialik egin.

Proiektu hau Aezkoan jaio zen, Mikelen jaioterrian. Mikelen lagun eta ahaideak buru-belarri saiatzen ari dira Mikelen oroitzapena eta gertatu zitzaiona ahantz ez daitezen. Mikel torturapean izan zen, eta tortura giza eskubideen zapalketarik gaitzesgarrienetako bat da, baina horrelako kasuak frogatzea oso zaila izaten da. Dokumental honen sustatzaileek hauxe dute asmoa: Aezkoatik eta Donostiatik, torturaren ondorioak ikusaraztea eta praktika horren aplikazioak izan duen eragina erakustea.

# ZABALZA FAMILIA

Zabalza familiak urte asko daramatza Iratiko oihanaren atean bizitzen, Orbaizetako antzinako Arma-olaren ondoan, alderdi liluragarri batean. Mikelen desagerpena eta heriotza mugarri izan dira leku horrentzat, hango bizilagunentzat eta geroko belaunaldiarentzat. Mikelen familiak 30 urte eman ditu tragedia horren zama pairatzen, askotan gordeka. Heriotzak eragindako mina eta gertatutakoa egunen batean argituko zelako itxaropena lagun, argi gelditu zaien gauza bakarra da Mikelen desagerpenean eta heriotzan inplikatutako pertsonek inpunitate osoa izan dutela, eta, horregatik, ezinezkoa gertatu zaie ahanztea eta aurrera egitea.

Ahaideak (anai-arrebak eta ilobak) ia astebururo elkartzen dira Lorentxo Etxean, hots, familiaren jaiotetxean. Familia handia da, eta tragedia horrek lotuagoak egotera bultzatu ditu, baina nabari da ulertzeko zailak diren isilune batzuk gertatzen direla familia giroan. Oraindik ere min handia dute barrenean, eta hurrengo belaunaldiak herentzia hori hartu du. Etxeko gazteek 30 urte hauetan zer gertatu den jakin nahi dute.

# PERTSONAIAK

**Zabalza familia**
Mikelek zortzi senide utzi zituen: Lourdes, Itziar, Arantxa, Iñigo, Patxi, Aitor, Begoña eta Idoia.

**Patxi Zabalza eta Esther senar-emazteak**
Patxi artzaina da, eta bere anaia Aitorrekin batera atxilotu eta torturatu zuten. Mikel desagertu zelarik, lehentasuna anaia bilatzea zenez, isilik eraman zuen gertatu zitzaiona. Orain, 30 urte igaro ondoren, lehenbiziko aldiz kontatuko du zer egin zioten polizia-etxean.

**Lourdes eta Idurre ama-alabak**
Lourdesek ez dio sekula alabari transmititu nahi izan Mikelen desagerpenak eragin zion mina. Gaur egun, Idurre ama da, eta bere alabari kontatu edo ez kontatu dabil. Lourdesek denbora luzea eman zuen bere minaren berri eman gabe, baina, gaur egun, hitzaldi publikoetan erakusten eta azaltzen du, beste biktima batzuekin batera.

**Itziar Zabalza**
Josurekin batera, hots, bere senarraren laguntzarekin, 30 urte daramatza borrokan Mikel anaiaren heriotza argitzeko epaiketa bat egin dadin. Erantzun bila dabil etengabe, eta Nafarroako Pirinio aldeko arkeologia da bere grina. Hainbat gako emanen dizkigu ulertzeko zergatik huts egin duten irekitako prozesu judizial guztiek.

**Idoia Zabalza eta Martin mutil-laguna**
Idoiak, Martin mutil-lagunaren laguntzarekin, Mikelen heriotzak eragin zion trauma gainditzea lortu du, gauetan ametsetan agertzen baitzitzaion. Orbaizetarrek diotenaren arabera, Lorentxo Etxea sorginduta dago. Idoiak azalduko digu zenbateraino den egia sinesmen hori.

**Begoña Zabalza eta Lohizune ama-alabak**
Begoñak 20 urte zituen anaia desagertu zenean. Gertatutakoaren ondoriozko shock-a dela kausa, eta familian ezarritako isiltasunagatik, ez da ongi oroitzen gertatutakoaz. Lohizune alaba (kazetaria da gaur egun) bidaide izanen du iragana errekuperatzeko bidaia honetan.

**Aitor Zabalza**
Polizia-operazio berean atxilotu zuten, eta polizia-etxean jasotako tratua ezkutatu du 30 urteotan. Orain, ezarritako isiltasun lege hori urratzera dator.

**Idoia Aierbe**
Mikel atxilotu zutenean, haren neska-laguna zen. Ezin izan ditu sekula gainditu bere mutil-lagunak jasandako torturak eta haren heriotzak eragindako trauma. Gaur egun, gaixotasun larri bat dauka, eta erresidentzia batean bizi da. Gaixotasun hori duela 30 urte jasandako torturen ondorioa ote?

**Ion Arretxe**
Polizia-operazio berean atxilotu zuten. Tortura larriak egin zizkiotela salatu zuen, eta bizipen horiek liburu batean bildu ditu berriki. GALeko mertzenario nagusiak eta Galindo jenerala bera nola ezagutu zituen kontatuko digu, eta Intxaurrondon igarotako egunen berri eman.

**Paco Etxeberria**
Nazioartean izen handia duen auzitegi-meidkua da, gaur egun torturaren ondorioei buruzko ikerlan bat egiten ari dena Eusko Jaurlaritzarentzat. Datuak eta lekukoak biltzeko eta Eva Foresten artxibo galduak errekuperatzeko egiten ari den lana erakutsiko digu dokumentalean.

**Hurrengo belaunaldia**
Mikel Zabalzak 15 iloba ditu: Itziar, Idurre, Leire, Amagoia, Aia, Jon, Izaskun, Mirari, Irantzu, Ugaitz, Garbiñe, Oihana, Lohizune, Joseba eta Garazi.

Gure seme-alabak babesteko sena izaten dugu denok. Begien bistakoa da familia horretan hainbat gauzaz ez zela hitz egiten. Iloba batzuei, txikitan, josteta arraro bat erakutsi zieten: “Etxe honetan sekretu bat dago kutxa batean gordea, eta aurkitu beharra dugu”.

Denbora luzea joan da, eta txikitako jostetak atzean utzita, ilobak ere ohartu dira beraiei ere badagokiela osaba Mikelen memoriak bizirik iraunaraztea.

**Bigarren mailako pertsonaiak**

**Larrun Sastre**
Eva Forest torturaren aurkako borrokalari nekaezinaren biloba da. Euskal Herrian gertaturiko tortura kasuei buruzko dokumentazioa gordetzen duen artxibo txiki baten zaintzailea da, Pako Etxeberriaren esku utziko duena.

**Kareen Helverg Larsen**
Danimarkako auzitegi-mediku honekin harremanetan jartzen saiatuko gara. Izan ere, Helverg andrea 1985ean Euskal Herrira etorri zen Mikel Zabalzaren gorpuari bigarren autopsia egitera. Gaur egun, tortura kasuak ikertzen segitzen du, eta, haren bitartez, IRCT zentroa bisitatuko dugu Danimarkan, torturak jasan dituzten pertsonei laguntza emateko Europan dagoen zentro bakarretako bat.

**Nazio Batuetako kontalariak, torturari aurrea hartzeko Europako komisarioak**
Mundu mailan izen handia duten torturaren aurkako adituek hainbat txosten egin dituzte Espainiako estatuan gertatutako tortura kasuei buruz eta horren inguruan dagoen inpunitateari buruz. Behin baino gehiagotan eskatu dute Terrorismoaren kontrako Legearen babesean atxilotuei aplikatzen zaien inkomunikazioa indargabetzeko, baina eskakizun horiek ez dira inoiz aintzat hartu. **Sir Nigel Rodley** Torturari buruzko Nazio Batuetako kontalaria, **Mauro Palma** Torturaren Prebentziorako Europako Batzordeko lehendakaria eta **Theo Van Boven** Nazio Batuen Erakundeko torturari buruzko behatzailea.

**Iñaki Garcia Arrizabalaga**
Bere aita Komando Autonomoek hil zuten 80ko hamarkadan. Urtetan barreneko amorruari eutsi bazion ere, halako batean bakearen aldeko ekarpen positibo bat egitea erabaki zuen, eta geroztik, Lourdes Zabalza lagun, zenbait bilera egin ditu indarkeriaren beste biktima batzuekin.

**Iñigo Iruin**
Zabalza familiaren abokatua da. Hainbat gako emanen dizkigu ulertzeko zergatik ez den oraindik lortu kasu honen epaiketarik egitea, Mikelen heriotza Intxaurrondoko guardia zibilei leporatzeko froga ugari izan arren.

**Tortura sufritu duten euskal herritarrek**
Beste batzuen artean, **Karmele Urbistondo, Unai Romano** eta **Jon Patxi Arratibel** euskal herritarren testigantzak eta hausnarketak jasoko dira.

# TOKIAK

**Orbaizeta**
Aezkoan dago, Nafarroako ipar-ekialdean, Pirinioetako ibarretako batean. Herria hiru auzotan banatua dago: Mendikoa, hau da, goikoa; Rotxapea, hots, behekoa, errota dagoena; eta herrigunea, erdialdean, hau da, etxe gehienak dituena.
Olaren auzoa ere aipatu beharra dago: herritik 5 kilometrora dago, antzina arma-ola izan zenaren inguruan sortua. Auzo honetan daude herriko baserri bakarrak. Ez da Orbaizetako Udalaren herrilurtzat hartzen; bai, ordea, Orbaizetako auzotzat.

**Endarlatsa**
Endarlatsa erreka bat da. Guardia Zibilak zioenez, Mikel Zabalzak ihes egin zuen tokia. Mikel han agertu zen hilik handik 20 egunera. 2015eko azaroaren 26an, goizeko 6etan, Mikel agertu eta handik 30 urtera, leku berera itzuliko gara Paco Etxeberriarekin, eta bertan azalduko digu Guardia Zibilaren bertsioak zergatik ez duen funtsik, zergatik ez den posible.

**Eva Foresten artxiboa, Hondarribian**
Forest-Sastre familiaren etxe maitagarrian dago, Hondarribian.

**Aranzadi**
Paco Etxeberria torturaren eraginari buruzko ikerketa garatzen ari den tokia.

**Iza zentroa**
Idoia Ayerbe bizi den egoitza. Hara joaten zaizkio bisitan ahaideak eta lagunak.

**Ulia mendia (Donostia)**
Hantxe agertu zen hilik, eskuburdinak jarrita eta tiro bat buruan jota, Iñaki Arrizabalagaren aita. Atentatua Komando Autonomoek egin zuten, 1980an hain zuzen.

**Orereta**
Ion Arretxeren jaioterria, eta haren bizitokia gaztaroan.

**Madril**
Ion Arretxe bizi den hiria.

**Danimarka**
Kareen Helverg Larsen auzitegi-medikua bizi den Europako herria. Han dago IRCT: tortura jasan duten pertsonei laguntzeko zentroa.

**Altza**
Mikel bizi zen auzoa. Han atxilotu zuten.

**Europako hainbat toki**
Europako zenbait herri dira: bertara joanen gara torturaren errealitatea ezagutzen duten nazioarteko aditu batzuei elkarrizketa egitera.

**Euskal Herriko zenbait toki**

# LANTALDEA

**Aitor Balbás Ruiz**
Eguzki Bideoak-eko bideo-ekintzailea 13 urtez. Dokumental hauetan hartu du parte: “Donde se cuece la guerra” (2005), “Piztera!” (2007), “Itoitz hustu arte” (2008) eta “Los malos sueños de René Petit” (2014).

**Aitor Merino**
Aktorea eta zuzendaria. Gehienbat zinemako, antzerkiko eta telebistako aktore lanetan ibili da, eta hogeitik gora filmetan hartu du parte zuzendari hauen agindupean: Montxo Armendáriz, Pilar Miró, Carlos Saura Medrano, Manuel Matji eta Icíar Bollaín, besteak beste. Zuzendari gisara, “El Pan Nuestro” filmak sariak jaso ditu Espainiako zein nazioarteko jaialdi askotan, eta Goya sarirako izendatua egon zen. “Asier ETA biok (Asier y yo)”, bere lehenbiziko film dokumental luzea (Amaia Merinorekin batera ekoitzia), Irizar Sariaren irabazlea izan zen Donostiako Zinemaldian (61. edizioan). Filmak nazioarteko zenbait sari ere jaso ditu.

**Miguel Angel Llamas “Pitu”**
Ikus-entzunezko ekoizpen-lanetako teknikaria. Ahotsa.info hedabidean egiten du lan. Lehenago, Apurtu.org eta Ateak Ireki komunikabideetan aritu zen. Beste dokumental hauetan ere hartu du parte: “Los trileros forales”, “¿Dónde están los dineros de la CAN?”, “Aske Gunea, la desobediencia en estado puro”.

**Aritz Gorostiaga Eskubi**
Kameralaria eta editorea. Zenbait komunikazio enpresatan eta hedabidetan egin du lan bideo-editore eta kameralari gisara. Irudi-arduraduna izan da Iruñeko Zine Jaialdian. Gainera, filmak egokitzeko teknikari espezializatua da “Cine Accesible” izeneko proiektuan: irisgarritasunaren produkzioa (audiodeskripzioa eta koloretako azpitituluak) estrenatzeko filmetan zinemarako eta DVDrako.
Lan zinematografiko hauetan hartu du parte: “Focus on Gulu” (2010), “Mana Kanchu-No hay” (2009), “Sahara no se vende” (2007), “Pamplona, lo que va de ayer a hoy” (2005), “Bagdad Rap” (2004, Santiago Álvarezen ohorezko nazioarteko 8. dokumental-sariketaren irabazlea, Santiago de Cuban, 2007ko martxoan)

**Iñigo Balbas Ruiz**

**Iñigo Ganzarain Fuente**
Produkzio-ondokoaren errealizadorea eta teknikaria. Zenbait dokumentaletan hartu du parte: “Los malos Sueños de Rene Petit” (2015), “Egunero” (2010), “Piztera!” (2007), “What about Columbus” (2012) edo “Nomadak Tx” (2007). Azkeneko horretan, zuzendariaren laguntzaile aritu zen. Dokumental horrek nazioarteko 15 sari lortu zituen, haien artean Europako Ekoizleen Elkartearen aipamen berezia Donostiako Jaialdian.
EITBrentzat ere egin du lan, Euskadi Komantxe saioaren erredaktoreburu gisara, eta, bestetik, bideoklipak egin ditu (Bukaera, Donostiako “Erroma” taldearentzat). Azkenik, mugikortasun murriztuko pertsonak gizarteratzeko “Free2move” izeneko proiektuan egin du lan, kontzientziazio film laburrak, bannerrak edo publizitate-spotak eginez.

# AURREKONTUA

Ikus-entzunezko proiektu honen gastua 60.000 euro ingurukoa izanen da. Diru horrekin eginen zaie aurre langile gastuei, bidaiei eta dokumentala egiteko behar diren material gastuei.

Dokumental hau egiteko eta finantza-bideetarako, hauen guztien parte-hartzea bilatuko dugu: EITB, Gipuzkoako Diputazioa, Eusko Jaurlaritza, Donostiako Udala, Aezkoa ibarreko udalak, Errenteriako Udala, beste hedabide batzuk eta kulturaren arloko erakunde publikoak.

Gainera, crowdfunding bat ere izanen da diru ekarpenak lortzeko, baita pertsona, talde eta eragile sozialen ekarpen ekonomikoak ere. Bestetik, 2015ean eta 2016an, zenbait ekitaldi publiko ere eginen dira dirua lortzeko.

# ZABALKUNTZA

Galdutako Objektuak dokumentala Europako eta Latinoamerikako zine jaialdi nagusietara aurkeztuko da 2016ko irailaz geroztik. Ahalegin berezia eginen da Donostiako Zinemaldian egoteko.

Bestalde, zine-aretoetan ere proiektatuko da, eta zenbait euskarritan banatuko da jendearentzat: DVD, on-line bidez ikusteko...

# GERTAKARIEN KRONOLOGIA

Azaroaren 26a
Atxiloketak Donostian, Errenterian eta Orbaizetan.
Mikel Zabalza dago atxilotuen artean.
Mikel Zabalzaren anaiak, Patxi eta Aitor, aske gelditu dira atxilotu eta 10 ordura.

Azaroaren 27a
Berria zabaldu da: “Desagertu da Mikel Zabalza”.
Bertsio ofizialaren arabera, ihes egin du.
Azaroaren 28a
Bilaketa lanak hasi dira.
Ahaideak Intxaurrondora doaz, eta, han, Mikel “galdutako objektuen bulegoan” bilatzeko esaten diete.

Azaroaren 29a
Intxaurrondoko Guardia Zibilaren koordinatzailearen deia Mikel torturapean hil dela adierazteko.
Zabalzaren ahaide bat Donostiako epaitegira azalduko da. Epaileak tramiteak hasteko aginduko du: horien artean, gertatu denaren inguruko txostena eskatu Guardia Zibilari.
Gainontzeko atxilotuak Madrilera eramanen dituzte.
Lehenbiziko  mobilizazio eta salaketa publikoak.

Abenduaren 2a
Gipuzkoako gobernadore zibilak, Julen Elgorriagak, Zabalza kasuaren inguruko kezka agertu, eta poliziaren bertsioa sinestezina dela adierazi du.
Norbaitek Zabalzaren etxera deitu du anaia Iparraldean dagoela esateko. Faltsua da.

Abenduaren 3a
EAJ: “Zabalzaren desagertzearen atzean zerbait iluna dago”.
Donostiako Tranbien konpainiako lankideen eta CCOO sindikatuaren komunikatuak.
Frantziako poliziak ukatu du haiek Zabalza Iparraldean atxilotu zutelako berria.
Julen Elgorriagak “zerbait gehiago dakiela” uste du epaileak.
Herri asanblada bat eragozteko, Guardia Zibilak Orbaizeta okupatu du. Presioak Orbaizetako apaizari eta udalari.

Abenduaren 4a
Ardanza lehendakariak bere kezka adieraziko du.
Iñigo Iruinek ordezkatutako akusazio partikularra onartu du epaitegiak.
Gipuzkoako Gobernu Zibilaren oharra Guardia Zibilaren bertsioa berresteko.
Manuel Bizkai aske gelditu da kargurik gabe.
Epaileak Idoia Aierbe eta Ion Arretxe libre uzteko erabakia hartu badu ere, espetxera sartu dituzte Fiskaltzak erabakiaren kontrako errekurtsoa aurkezteko zain.
Mobilizazio gehiago Altzan.

Abenduaren 6a
Idoia Aierbe aske gelditu da fidantzarik gabe.
Kasuaren epailea: “Igeri egin al daiteke esku-burdinak jarrita?
Orbaizetako Udalaren akordioa gertatutakoa argitu dadila eskatzeko.
Donostiako Udalak, osoko bilkuran, akusazio partikular gisa aritzea erabaki du.
Greba Donostiako Tranbien konpainian.

Abenduaren 7a
Gertaeren berreraikitzea Endarlatsan.
Guardia Zibilek onartzen dute ihesaldian ez ziotela tirorik egin Mikeli.
Istiluak Iruñean manifestazio baten ondoren.

Abenduaren 8a
Gogorki erreprimitutako manifestazioa Donostian.
Setien gotzainak Zabalza kasua aipatuko du bere predikuan.

Abenduaren 9a
Idoia Aierbek aditzera ematen du ikusi zuela pertsona bat esku-ohe batean ateratzen ari zirela Intxaurrondotik.
Guardia Zibilek epailearen aurrean deklaratzen dute.
Haien abokatuak prentsaurrekoa eman du bertsio ofiziala defendatzeko. Istilua prentsarekin: 3 kazetari atxikiko dituzte guardia zibilei argazkiak ateratzeagatik. Jipoitu eta mehatxatu zituzten.

Abenduaren 10a
Mikelekin batera atxilotutakoek epailearen aurrean deklaratzen dute. Mikel Zabalza nola torturatzen zuten aditu eta ikusi zutela adierazten dute, eta beraiek

ere torturak pairatu zituztela.
Bilaketa lanek jarraitzen dute. “Ezinezkoa da gorpua ibaian egotea” dio arduradun batek.
Jose Barrionuevok, Barne Ministroak, “gertatutakoa argitzea komenigarria dela” dio.

Abenduaren 11
HB akusazio partikular gisa aurkeztuko da, Guardia Zibila, gobernadorea eta Espainiako Gobernua salatzeko.
Barrionuevo: “Zabalza agertuko da edo aurkituko dute”.
Galindok deklara dezala eskatzen dute.

Abenduaren 12a
Epaileak egiaztatzen du Intxaurrondon ez dagoela Guardia Zibilen gainontzeko kuarteletan dagoen sarrera eta irteeren erregistroa. Beraz, ez dago Zabalza sartu edo atera zen ziurtatzeko modurik.
Bidasoa miatu dute, baina arrakastarik gabe.
Ardanzaren eta Zabalza familiaren arteko bilera.
Parlamentuko lehendakari Balbino Badósek (UPN), aldiz, ez ditu hartuko.

Abenduaren 13a
Iruñeko artzapezpikuaren eta alkatearen erreakzioak.
Garbiñe Garatek, Mikelen amak, semea agertuko dela pentsatzen du, oraindik bizirik dagoela. Familia mindurik HBrekin.

Abenduaren 14a
Migueltxo Otazo Txakartegi, Iñaki Ibargarai eta Asun Laboa, Pasaian atxilotu eta torturatuak. Zabalzari gertatutakoa gertatuko zitzaiela esanez mehatxatuak. Prentsaurrekoa ematen dute Idoia Aierberekin eta Ion Arretxerekin batera.
Nafar Gobernuko presidenteak, Javier Urralburuk, Zabalzaren familia hartzen du.
Idoia Aierbe: “Mikel, orain, Euskadiren kontua da”.

Abenduaren 15a
Agertu da Mikel Zabalzaren gorpua. Lehenbiziko autopsia eginen zaio.
Manifestazioak eta istiluak Euskal Herriko bazter guztietan.

Abenduaren 16a
Familiaren adierazpena: “Prestaturiko agerpena izan da. Torturapean hil da”.
Ordezkarien bilera Orbaizetan, Urralbururekin, Roldánekin eta Badósekin.
Manifestazioak eta istiluak Euskal Herrian.

Abenduaren 17a
Uretan murgiltzearen ondoriozko asfixiaz hil zela dio autopsiak.
Manifestazio eta istiluek jarraitzen dute lurralde osoan.

Abenduaren 18a
Greba orokorra Euskal Herrian. Poliziaren errepresioa.
Zabalzaren ehorzketa Orbaizetan.